# «FRAISKU» SANTUAREN EGUNEKO EUKARISTIA



**Sarrerako abestia**

**LURREKO POBREENAK,**
**LARRI TA OIHUKA:**
**HAIEN NEGAR-SAMINA**
**JAUNAREN AHOTSA.**

Jaunak sortu baditu ura eta pertsonak
berarentzat guztiok bagara bardinak:
zelan anaiak deitu pobreei lotsa gabe
geure erruz gosez ta egarriz badaude?

**Bertsotan**

"Fraisku" Asisko santu pobrea, aldietan maitatua,
egizu, arren, gu danon alde zeruetan erregua.
Gure artean urte luzeetan nagusi da-ta dirua;
*eskatu eizu gu guztiontzat neurrizko bizimodua*...

**Erantzun Salmoa (Sal 15, 1-2ª eta 5. 7-8. 11)**

**R/. Zeu zaitut, Jauna, ondasuna.**

Gorde nagizu, Jainko, Zugan naz-eta babesten.
Hau dinotsot Jaunari: «Zu zaitut neure Jauna».
Jauna, Zeu zaitut neure ondarea, neure edontzia,
zure esku dago nire zoria. R/.

Bedeinkatzen dot Jauna, aholku deust-eta emoten,
gauez be berak dau nire barrua hezten.
Begi aurrean dot Jauna eten barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dardaratu. R/.

Bizirako bidea erakutsiko deustazu;
alaitasunez beteko nozu zeure aurrean,

zorionez betiko zeure ondoan. R/.

**Oparien gainerako**

Meza danetan opari bidez aurkezten dogu fedea,
diru-batzean gogotan hartuz hemengo ta_hango pobrea.
Ogia eta ardaua dira guretzako mahaikadea:
*mahai honetara etor daitela edonongo_inmigrantea*...

**Jaunartzerako abestia**

**Zabal bihotzok errukirako,**
**sendo bihotzok borrokarako.**

—Gizon-emakume barri, kondairaren eragile
gizatasun barriaren oinarri eta egile.
Gizon-emakume barri arriskuen onartzaile,
fede-bizitzan ausarta, zailtasunetan garaile.

—Gizon-emakume barri, esperantzaren gudari,
zuzenaren gose-egarri, egi bidean bidari.
Gizon-emakume barri, ez kate ta ez lokarri,
askatasunaren jabe eta askatasun-azkarri.

—Gizon-emakume barri, mugaz-gaindiko maitale,
alkar artean oretuz arraza eta lurralde.
Gizon-emakume barri, pobreen artean pobre,
hauekin alkarbanatuz etxeko ogi ta aterpe.

**Jaunartze ondorenerako**

Pobre zalako "Fraisku" santua izan zan guztiz librea,
beretzat hartuz ipar bakar hau: Barri Ona jarraitzea.
Eukaristia ospatu dogu, sartu jaku zirrarea:
*bateratuta bizi daiguzan pobrezia ta fedea*...

**Azken abestia**

**Jende asko negarrez, horrek nauka minez** (bir)

—Etxe gabe, goseak hilten, pozik gabe bizia galtzen.
—Bizia maite baina ezin, jakitea baina norekin.
—Jainko seme-alabak dira ta gu anaiak ote gara?